# EUSKAL HERRIKO PRESOEI ETA ESPAINIAKO GOBERNUAREN ESPETXE-POLITIKARI BURUZKO KONTSIDERAZIO LABURRAK [1]

1. Euskal Herriko Unibertsitateak euskal presoen egoerari buruzko txosten bat egin zuen, bereziki espetxe-politika aztertuz funtsezko eskubideen ikuspuntua oinarri hartuta. Hasierako txosten hori ondoren hainbat erakundetako eta ideologia desberdinetako juristei bidali zitzaien, haien ekarpenak biltzeko eta haietako askok beren gain hartzeko moduko behin betiko testu bat lantzeko. Testu hau prozesu horren emaitza da.

2. Txostenaren helburua iritzi publikoari lekualdatzea da, batez ere iritzi publiko europarrari Europako erakundeetan dituzten ordezkarien bitartez. Aurrerago zehaztuko den bezala, gaur egun euskal presoen eskubideak etengabe ukatzen ari dira. Eskubide-ukatze hori helburu politikoarekin erabiltzen dute, botere publikoek horrelako jardun bat egitea ahalbidetzen duen inolako oinarri juridikorik ez dagoen arren.

3. Funtsezko eskubideen errespetua oinarrizko elementua izan den paradigma historikoa eta politikoa izan da Europa, eta egun ere bada. Oinarrizko izaera hori ideologikoa da, zuzenbide-estatuaren printzipioei, botereen banaketari eta legezkotasun-printzipioari lotuta dagoena. Europako Kontseiluaren esparruan giza eskubideen eta askatasun publikoen Europako hitzarmena onartu zen, Europan funtsezko eskubideak errespetatzen zirela bermatzeko mekanismo berri eta eraginkorrak sortu zituena. Era berean, Europar Batasunak funtsezko eskubideen gutun bat onartu zuen, gaur egun zuzenbide positiboaren barnean hartuta dagoena, Lisboako Gutunean.

4. Giza Eskubideen Europako Auzitegiak hainbat epai eman ditu bermatzen dituen eskubideei dagokienez, eta sinatu duten Estatu guztietan izan dute eragina. Epai horiek, Europa osoan aplikatzekoa den giza eskubideei buruzko ideia bat ordezkatzen duen jurisprudentzia bat sortzen joan dira. Giza Eskubideen Europako Auzitegiak ebazpen bat ematen duenean, ez du soilik kasu jakin bat ebazteko egiten hori. Bere jarduera urrunago doa, giza eskubideen zuzenbide europar bat sortzen duelako, botere publiko guztiek nahitaez errespetatu beharreko estandar bihurtzen dena.

5. Era berean, Europar Batasunak, bere Justizia Auzitegiak, hirurogeita hamarreko hamarkadaren hasieratik adierazi du estatu kideetan indarrean dauden funtsezko eskubideak zuzenbidearen printzipio orokorrak direla eta agintari publiko europarrek errespetatu egin behar dituztela beren botereak egikaritzen dituztenean. Giza eskubideen Europako Gutunaren onarpenarekin eskubide horiek zuzenbide positibo bihurtu dira, haien edukiari segurtasuna eta egonkortasuna emanez, eta era berean eraikuntza politiko europarrak agerian zuen gabezia bat osatuz.

6. Eskubide horien benetako indarraldia Estatu bakoitzaren kultura juridiko-politikoaren arabera dago. Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren jurisprudentzia Estatu europar guztietan aplikatu behar da. Jurisprudentzia horrek balio juridikoa du, Estatu aplikatzailea Europako Auzitegian jarraitu den prozesuan alderdietako bat izan den ala ez berdin diolarik. Hainbat agintari publikok, eta bereziki agintari espainiarrek, printzipio hori ukatu egin nahi dute.

7. Barne Arazoetako Ministro Jorge Fernández Díazek lehenik eta behin adierazi zuen GEEAren 2013ko urriaren 21eko epaia (Del Río Prada Espainiaren aurka) ez zela aplikatuko, eta adierazi zuen beharrezko bihurgune juridikoak aurkituko zituela haren aplikazioak barne-ordenan izan zitzakeen eraginak eragozteko, besteak beste dagoeneko ez zegokien kondena betetzen ari ziren euskal presoak askatzea.

---

[1] Lan hau Euskal Herriko Unibertsitateko IKASMIRAK *Ikasketa Juridikoen Diziplina arteko Ikergunea / Centro Interdisciplinar de Estudios Jurídicos* izeneko ikerguneak egin du, irabazi-asmorik gabeko SARE elkarteak eskatuta, eta lanaren edukia idatzi hau sinatu duten ekarpenekin aldatu da.

Auzitegien esku-hartzeak epaiaren aplikazioa bermatu zuen, hainbat telebista-katek eta komunikabidek Europako Auzitegiaren izena zikintzeko kanpaina bat egin zuten arren, izan ere, Espainiako gobernuari eta bereziki Barne Arazoetako Ministerioari kanpaina hori egiten lagundu baitzioten.

8. GEEAren jurisprudentziaren eta Auzitegiaren epaien betetze interesdun hori, komeni direnak bakarrik errespetatzen eta aplikatzen baitira, muturreraino eramaten da Estatu espainiarra auzian alderdi ez den epaiak direnean. Espainiako gobernuari GEEAren epaiak, bere jurisprudentzia, euskal presoei aplikatzeari buruz egin zitzaion galderari erantzun zion esanez gobernua alderdi zen epaiek bakarrik lotesten zutela. Erantzuna Gorte Nagusietako Aldizkari Ofizialean agertzen da (ikus 184/70529 galdera, 2015eko otsailaren 24koa, 180783).

9. Espainiako gobernuaren erantzun hori nazioarteko arauek barne-ordenan duten balioa erregulatzen duten agindu konstituzionalekin kontraesanean dago. Hala ere, funtsezko kontraesana Espainiako Konstituzioaren 10.2 artikuluan kokatu behar da. Agindu horrek honako hau dio hitzez hitz: "Konstituzioak aitortzen dituen oinarrizko eskubideei eta askatasunei buruzko arauak interpretatzeko, kontuan hartuko da Giza Eskubideen Adierazpen Unibertsala, bai eta gai berberen inguruan Espainiak berretsi dituen nazioarteko tratatuak eta itunak ere."

10. Auzitegi Gorenaren eta Botere Judizialaren Kontseilu Nagusiaren presidenteak Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren egoitzan adierazi zuen Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren epaiek gauza interpretatuaren indarra dutela Konstituzio Auzitegiarentzat (ikus 25. atal zabala).

11. Arauak egon arren eta Auzitegi Gorenaren presidenteak hainbat adierazpen egin arren, errealitatea da Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren jurisprudentzia ez zaiela aplikatzen euskal presoei. Presoek kondena beren ohiko bizilekutik hurbil betetzeko duten eskubideari buruzko jurisprudentzia da bereziki aplikatu ez dena. Era berean zigor-betetzearen kontabilizazioari buruzko Europar Batasunaren araudiari ez zaio jaramonik egin, betetze hori Batasunaz bestelako estatuetan egiten denean.

12. Informazioa emateko, eta testuinguruan behar bezala jartzeko, adierazi behar da eskubideen ukatze-egoera hori Euskal Herriarentzako itxaropen handiko une politiko batean gertatzen dela. 2011ko azaroaren 20az geroztik indarkeriazko jardun oro bertan behera utzi dute, eta bake-prozesu bati hasiera eman zaio, zeinaren ekimena alde bakarrekoa izan den, hau da, ETA erakundeak erabaki du Gobernuarekin inolako akordio motarik lortu gabe. ETA erakundea deuseztatu ez bada ere, indar politiko guztien ustez, inolako salbuespenik gabe, mota guztietako indarkeriazko jardunak bertan behera uztea behin betiko da. Egoera horretan bereziki deigarria da gobernu espainiarrak euskal presoekin politika bereziki gogorra aplikatzen jarraitzea, haien eskubideei uko eginez, eta hori ondoren aztertuko da funtsezko bi gai kontuan izanik. Lehena, zigor-metaketari buruzko Esparru Erabakia aplikatzeari buruzkoa. Bigarrena, euskal presoen sakabanaketa estatu espainiarreko hainbat espetxetan.

## ZIGOR-METAKETARI BURUZ: 2008/675/JAI ESPARRU-ERABAKIA

13. 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren helburua, estatu kide batean pertsona baten aurka jarraitutako prozesu penala dela medio, beste estatu kide batzuetan pertsona beraren aurka egintza desberdinengatik eman diren aurreko kondenak edota betetako kondenak kontuan izateko baldintzak ezartzea da. Erregulazio horren ondorioz euskal presoek beste estatu europar batzuetan, batez ere Frantzian, betetako kondena-denborak kontuan hartzen ziren, auzitegi espainiarrek jarritako kondenak betetzeko geratzen zaien denbora ezarri behar denean.

14. Esparru-erabaki hori Auzitegi Gorenak aplikatu zuen 186/2014 epaian, non 2008/675/JAI Esparru Erabaki hori oinarritzat hartzen duen Espainiako legerian ezarritako kondenak betetzeko muga aplikatzeko. Esparru Erabakiaren zuzeneko aplikazioak esan nahi du estatu frantziarrean betetako kondena-denbora kontuan hartzen zela pertsona horri estatu espainiarrean dagokion kondena betetzeko denbora ezartzeko.

15. 2008/675/JAI Esparru Erabakia indarrean jarri eta lau urte geroago Gorte Nagusietan 7/2014 Lege Organikoa eman zen, haren helburua aipatu den Esparru Erabakiaren aurreikuspenak betetzea izanik.

Lege hori Esparru Erabakiaren transposizio-epea dagoeneko amaituta zegoela eman zen. Egia esan legea ez zen beharrezkoa, Auzitegi Gorenak 2008/675/JAI Esparru Erabakia zuzenean aplikatu zuelako, pertsona batek Frantzian betetako kondenak estatu espainiarrean bete beharreko kondena-denboratik deskontatuz.

16. Beste hainbat gairekin batera, 7/2014 lege organikoak ezartzen du 2008/675/JAI Esparru erabakiak aipatzen duen balizko kondena-metaketak 2010eko abuztuaren 15etik aurrera betetako kondenak bakarrik hartuko dituela eraginpean. Denbora-muga hori ezartzea Auzitegi Gorenak 186/2014 epaian dagoeneko ezarri zuenaren aurkakoa da. Dena dela, hori ez da garrantzitsuena, baizik eta legegile espainiarrak euskal presoen kolektiboari dagokionez kondena-epai europarren asimilazio-printzipiotik erator zitekeen edozein eragin onuragarri eragozten duen arau bat sartu duela.

17. Beraz, 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren eta 7/2014 lege organiko berantiar horren arteko loturaren arazoa planteatzen da judizialki. Sortzen den funtsezko galdera, beste hainbat galdera badaude ere, zera da: kondena-metaketa aplikatzerakoan denbora-muga hori Esparru Erabakiarekin bat datorren ala ez. Beste modu batean eta Auzitegi Nazionaleko zigor-arloko salaren 51/2015 Autoari emandako boto partikularrari erantsitako hitzak erabiliz, honako galdera hau planteatu ahal izango litzateke:

Interpretatu al daiteke 2008/675/JAI Esparru Erabakiak estatu kide bati ahalmena ematen diola Europar Batasuneko gainerako estatuetako auzitegiek emandako kondena-epaiak modu baliokidean kontuan hartzerakoan 2010eko abuztuaren 15a baino lehenagokoak kanpo uzteko?

18. 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren interpretazioak sortzen dituen zalantzak ikusita, Europar Batasuneko Justizia Auzitegiaren aurrean judizio aurreko arazoa planteatu beharko litzateke. Hau da, kasazioko goi-auzitegi horri galdetzea Esparru Erabakiaren interpretazioak uzten ote duen estatu kide batek 7/2014 lege organikoa bezalako lege bat ematea, espetxeratuta dauden pertsonen eskubideak mugatzen dituena.

19. Auzitegi espainiarrak judizio aurreko arazo hori ez du bideratu Europar Batasuneko Justizia Auzitegira. Haren iritziz Esparru Erabakia argia da alderdi horri dagokionez, hemeretzi epailetik bederatzik Europar Batasuneko Justizia Auzitegiaren aurrean judizio aurreko arazoa planteatu beharko litzatekeela uste izan arren. Ildo horretan adierazi behar da auzitegi espainiarraren erabakiak objekzio garrantzitsuak jaso ditzakeela barne-zuzenbidearen ikuspuntutik.

20. Zehazki, sala epai-emaileak dagoeneko intzidente bat martxan jarri zuen judizio aurreko arazoa planteatzeko, alderdiei horren berri emanez judizio aurreko arazo hori planteatzearen egokitasunari buruzko iritzia eman zezaten. Kasuaz arduratzeko eskumena duen salak hartutako ekimen horren aurrean, Auzitegi Nazionalaren osoko bilkurak eskumen hori salari kendu zion eta Auzitegiaren osoko bilkurara lekualdatu zuen, teknikoki "goragoko eskumenak bereganatzea" deitzen dena sortuz. Hau da, goragoko organo batek berarentzat erreklamatzen duela beheragoko organo bati dagokion eskumena. "Goragoko eskumenak bereganatze" hori ez da onargarria zuzenbide prozesalean, eta are gutxiago dagoeneko martxan dagoen prozesu bat denean. Epaileek beren funtzioa, hots, epaitzeko funtzioa egikaritzeko duten independentzia eta auzitegien independentzia ez dago inolako irizpide hierarkikoren mende. Auzitegi Nazionalaren Osoko Bilkurak gai jakin batez arduratzen ari den Auzitegi horretako Sala baten eskumena ezin du ezabatu. Lege-agindu bakar bat ere ezin da interpretatu epaile naturalaren eskumena kentzea eta epaile naturalaren eskumen hori goragoko auzitegiarentzat erreklamatzea ahalbidetzen duen moduan.

21. Gertakarien arabera, portaera horren arrazoiak nabariak dira. Auzitegi Nazionalaren Osoko Bilkurak auzitegi horren zigor-arloko sala baten eskumena ezabatu nahi du, Justizia Auzitegiaren aurrean judizio aurreko arazo bat plantea dadin eragozteko. 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren arabera 7/2014 lege organikoa bezalako lege bat ematea posible ote den galdetu dadin eragotzi nahi dute, izan ere, lege horrek presoek estatu espainiarrean bete beharreko kondenaldia zenbatzerakoan kondenak metatzeko aukera denbora-epe jakin batera mugatzen baitu.

Auzitegi Nazionalaren Osoko Bilkuraren jardun horrek, Europar Batasuneko Justizia Auzitegiaren aurrean

judizio aurreko arazo bat plantea dadin eragotziz, hainbat kontsiderazio egitera behartzen gaitu, hala nola:

a) 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren norainokoa argitzera bideratutako judizio aurreko arazo bat Europar Batasuneko Justizia Auzitegira iritsi dadin eragozteko interes argia dute Botere Judizialeko hainbat kidek.
b) Auzitegi Nazionalaren Osoko Bilkuraren 51/15 Autoarekin eragotzi da kondena-metaketari lotutako gai batez arduratzen ari zen Epaile – Auzitegi naturalak Europar Batasuneko Justizia Auzitegira jotzea. Hori lortzearren legez oso eztabaidagarria den prozedura bat erabili da. Judizio aurreko arazoak a quo epailea Europar Batasuneko Justizia Auzitegiarekin lotesten du, eta horri auzitegien arteko elkarrizketa deritzo.
c) Ez da juridikoki ulergarria erresistentzia hori, 2008/675/JAI Esparru Erabakiak dituen interpretazio-diferentziak kontuan izanik. Interpretazio-diferentzia horiek batez ere bi gaitan adierazten dira, hala nola: 1) Hemeretzi epailetik bederatzik, Esparru Erabakiaren interpretazioa eztabaidatzen duen boto partikularra eman dute, eta 2) Auzitegi Gorenak dagoeneko zuzenean aplikatu zuen, 7/2014 legea indarrean jarri aurretik, kondena-metaketa onartuz. 7/2014 Legea indarrean jarriz aipatu den Auzitegi Gorenarena bezalako epai berriak eragotzi nahi dira.
d) Aurreko datuetatik nahitaez ateratzen den ondorioa da Justizia Auzitegiak 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren norainokoari buruzko adierazpenik ez egitera bideratutako jarraibide politiko bat dagoela. Helburu hori lortzeko ez zuten zalantzarik izan Europako Erkidegoko legezkotasuna eta Espainiako legezkotasuna bera muturreraino bortxatzeko. Halako setakeriak, dagoeneko kondena-urte asko bete dituzten pertsonek espetxean urte asko betetzeari dagokionez, botere judizialaren independentzia zalantzan jartzen du argi eta garbi.

22. Lehenago adierazi den eta Justizia Auzitegiari zuzenduta zegoen galderari (17. idatz-zatia), 51/2015 Autoari emandako boto partikularrean egiten zen beste galdera hau gaineratu ahal izango litzaioke, hala nola: Europar Batasuneko Oinarrizko Eskubideen Gutunean onartutako funtsezko eskubideekin eta 2008 Esparru Zuzentarauaren oinarrian dauden printzipioekin bateragarria al den legeak atzeraeraginez egitea, 2008 Esparru Zuzentarauaren aplikazioaren eraginak mugatuz, kondenatuen kaltetan, Auzitegien jurisprudentziak arau horretan xedatutakoa betetzeko beharrezko neurriak dagoeneko hartuta zeudenean?

Gogorarazi behar da 2008 Esparru Zuzentaraua 2008/675/JAI Esparru Erabakia dela eta Auzitegiek dagoeneko esparru-erabaki hori aplikatzearen aldeko adierazpena egin zutela, hain zuzen ere Auzitegi Gorenaren 186/2014 epaian. Erabaki judizial hori egon arren, legelariak 2008/675/JAI Esparru Erabakiaren atzeraeraginezko izaera ukatzen duen lege bat ematen du. Hau da, 7/2014 Legea Auzitegi Gorenaren jurisprudentziaren aurka doa, bere eskumenen barruan erregulazio argia eta aipatu Esparru Erabakian presoei aitortzen zaizkien eskubideekiko erabat kontrajarria eginez aplikatzen duenean Esparru Erabakia.

## PRESOAK BEREN OHIKO BIZILEKUTIK OSO URRUN KOKATUTA DAUDEN ESPETXEETAN SAKABANATZEARI BURUZ

23. Atal honetan, beren ohiko bizilekuetatik oso urrun espetxeratuta dauden euskal presoen egoera aztertu nahi da. Presoak beren jatorrizko udalerrietatik aldentzeko politika horri sakabanaketa izena eman zaio. Euskal presoek maiz jo dute agintari judizialengana beren ohiko bizilekutik hurbil zeuden espetxeetara lekualdatzeko eskaera eginez, eta beti ezetz erantzun diete. Jardun horren adibide gisa Auzitegi Nazionalak 2015eko martxoaren 25ean emandako Autoa aipa daiteke. Lekualdatzeko eskaerari erantzuten zaio ez dela egiaztatzen "presoak alegatutako eskubideetako bakar bat ere zehazki urratu denik", bere lekualdaketaren xede izateko. Horrez gain gaineratzen da giltzaperatuek ez dutela beren kondena ohiko bizileku edo egoitzatik hurbil dauden espetxeetan betetzeko inolako eskubide subjektiborik. Ondoren Auto horren eduki juridikoari sasitza garbituko zaio aurkezten dituen argudio juridikoak kontuan izanik.

24. Autoan, ebazpen judiziala jaulkitzeko oinarritzat hartzen diren hainbat arau erabiltzen dira. Arau horien artean Espetxeen Lege Organiko Orokorra (ELOO) eta Espetxeen Erregelamendua (EE) aipatzen dira. Ondoren Europako Kontseiluaren Ebazpen bat gaineratzen da, 2014ko otsailaren 19ko COM/

REC(2014) Ebazpena. Erreferentzia juridiko horien urritasuna nabarmen gelditzen da, aurkeztutako eskaerari juridikoki oinarritutako erantzun bat emateko argi eta garbi beharrezkoak diren zuzenbide positibo espainiarraren arauak ez dituelako erabiltzen Ebazpenak. Behar adinako oinarri juridiko hori gabe espetxean giltzaperatuen babes judiziala bera zalantzan jartzen ari dira.

25. Autoak arau horien artean ez ditu aipatzen ez Espainiako Konstituzioa ezta Giza Eskubideen eta Askatasun Publikoen Europako Hitzarmena ere. Absentzia horrek atentzioa ematen du Giza Eskubideen eta Askatasun Publikoen Europako Hitzarmena estatu espainiarrean indarrean dagoen Zuzenbidea delako, Espainiako Konstituzioaren 96. artikuluan bildutako aurreikuspenetik ondorioztatzen denez, eta gainera Hitzarmen hori Estatuko Aldizkari Ofizialean argitaratu zen. Hitzarmena, beraz, indarrean dagoen Zuzenbidea da, magistratuek hori aplikatzeko betebeharra izanik, eta baliteke aplikazio horretan indarrean dauden barne-arauak ez errespetatzea, barne-arau horien artean lege-izaera juridikoa dutenak.

26. Aurreko aginduarekin batera, Espainiako Konstituzioaren 10.2 artikulua azpimarratu behar da, gai honetan esanahi berezia baitu. Artikulu horren arabera, estatu espainiarrak giza eskubideen alorrean hartutako nazioarteko konpromisoek Konstituzioak aitortzen dituen funtsezko eskubideak eta askatasunak interpretatzeko baliagarri izan behar dute.

Espainiako Konstituzio Auzitegiaren presidente Francisco Pérez de los Cobosek, Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren urte judizialaren irekiera-hitzaldian, 2015eko urtarrilean, zera adierazi zuen: "Auzitegi honek (GEEA) bertan aitortutako eskubideen inguruan landutako doktrina-ondare guztia konstituzioaren testua irakurtzeko kanon hermeneutiko nagusi bihurtu zen". Aurrerago adierazi zuen kanon horrek "garrantzi erabakigarria" izan duela, eta ondoren adierazi zuen Espainiako Konstituzio Auzitegiak "bere egin duela Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren jurisprudentziaren <<gauza interpretatuaren>> indarraren printzipioa". Espainiako Konstituzio Auzitegiaren presidentearen ustez Konstituzio Auzitegiaren jardunak eta jurisdikzio arruntean izan duen eraginak "Espainian giza eskubideen babes-maila handia eta eraginkorra izatea ekarri dute. Eta egoera horrek, begien bistakoa denez, GEEAren lan-karga arintzen du, izan ere, gure auzitegi arruntak eta Konstituzio Auzitegia, subsidiariotasun-printzipioaren indarrez, Erromako Hitzarmenean aitortutako eskubideen eta horien protokolo osagarrien bermatzaile natural eta eraginkor bihurtzen baititu".

Konstituzio Auzitegiak jadanik adierazi du GEEAren aginduen interpretazioak Auzitegiarentzat duen "garrantzi erabakigarria" (STC 22/1981), eskubideak Hitzarmenarekin "kontraesanean" ez direla interpretatu behar adieraziz (STC 113/1995). Era berean adierazi du Konstituzioaren lehen kapituluko "eskubideen konstituzionalki deklaratutako edukia" estatu espainiarrak giza eskubideen alorrean berretsi dituen hitzarmenen edukiarekin bat datorrela (STC 236/2007).

27. Adierazitako arauak garrantzitsuak izan arren, Auzitegi Nazionalarentzat, espetxe-zaintzako funtzioak dituen bere Adingabeen Epaitegiarentzat, arau horiek ez dira existitzen. Aipatu den 2015eko martxoaren 25eko Autoak ez du Espainiako Konstituzioari eta Giza Eskubideen eta Askatasun Publikoen Europako Hitzarmenari buruzko inolako aipamenik egiten. Harritzekoa bada ere, Auto horrek Europako Kontseiluaren Ebazpen bat aipatzen du (COM/REC(2014), 2014ko otsailaren 19koa), kasuari aplikatzeko modukoa ez dirudien Ebazpena, eta epaileak ere ez du zehazten haren edukia zein den, Ebazpen horren aplikatzekoa izan daitekeen atal edo agindurako igorpena falta delarik. Esan daiteke, beraz, kasuari aplikatutako arauen hautaketak ordenamendu juridikoarekiko funtsezko eta oinarrizko ezjakintasuna edo errakuntza agerian uzten duela espetxean giltzaperatutako pertsonen eskubideak erregulatzen dituenean. Eta era berean horixe uzten du agerian Europako Kontseiluko Ministro Batzordeak "Europako espetxe-arauei" buruz egindako Rec(2006)2 Gomendioa aipatu ez izanak.

28. Auto horretan benetan deigarria den bigarren gaia honako adierazpen hau da: presoek kondena ohiko bizilekutik hurbil betetzeko eskubide subjektiborik ez dutela. Epailearen adierazpen hori ez dator bat Zuzenbidearekin, eta ez dator bat Giza Eskubideen Europako Auzitegiak berak horixe adierazi duelako. Europako Kontseiluaren eremuan emandako hainbat ebazpen eta epai dira horixe adierazten dutenak. Duela gutxiko bi kasutan, non Errusiako eta Ukrainako espetxe-politika zalantzan jarri den, adierazi da presoek beren kondena ohiko bizilekutik, beren senitartekoen bizilekutik hurbil betetzeko eskubidea dutela. Euskal presoak jasaten ari diren sakabanaketak beren funtsezko eskubideak urratzen ditu, zehazki intimitaterako eta familia-bizitzarako eskubidea. Botere publikoek espetxeratutako

pertsonak ezin dituzte tratatu inolako eskubiderik ez duten pertsonak izango balira bezala. Edozein zuzenbide-estatutan pertsonen eskubideak, baita espetxeratuta dauden pertsonenak ere, legearen indarrez eta espetxeratutako pertsona gisa dituzten eskubideak errespetatuz bakarrik mugatu daitezke. Horren haritik, espetxeratuta dauden pertsonen intimitaterako eta familia-bizitzarako eskubidea Giza Eskubideen eta Askatasun Publikoen Europako Hitzarmenean, 1978ko Espainiako Konstituzioan (EK) eta lege-maila baino apalagoko beste arau batzuetan dago aitortuta. Hitzarmenean aitortuta dago Giza Eskubideen Europako Auzitegiak (GEEA) Khodorkovskiy eta Lebedev Errusiaren aurka kasuan, 11082/06 eta 13772/05 auzietan, eman zuen epaiaren eta **Vintman Ukrainaren aurka** kasuan 2014ko urriaren 23an, 28403705 auzian, eman zuen epaiaren ondorioz. Bi epaietan argi eta garbi adierazten da presoek beren bizilekutik hurbil dauden espetxeetan barneratuta egoteko eskubidea dutela. Vintman Epaian senitartekoen eskubideak ere aipatzen dira, espetxera dagoen distantzia dela medio beren senitartekoak ezin baitituzte bisitatu, bereziki ama elbarri baten kasuan.

29. Horren haritik, presoek beren bizilekutik hurbil dauden espetxeetan egoteko eskubidea dutela ezartzen duten Europako Auzitegiaren hainbat epairi buruz galdetu zitzaionean gobernuari parlamentuan, zehazki Khodorkovskiy eta Lebedev Errusiaren aurka eta Vintman Ukrainaren aurka epaiei lotuta, gobernu espainiarrak idatziz erantzun zion Parlamentuari, pentsatzen dugu Barne Arazoetako Ministroaren argudioak erabiliz, hau da, adieraziz estatu espainiarraren kasuan "terrorismoagatik kondenatutakoei jaun-andre horrek legearen aurkakotzat, zehazkiago adieraziz Giza Eskubideen Hitzarmenaren eta GEEAren (Giza Eskubideen Europako Auzitegia) jurisprudentziaren aurkakotzat jotzen dituzun urruntze-neurri batzuk aplikatzen jarraitzen dela, Europako Auzitegiak hura interpretatuz, izan ere, behin eta berriz azaldu den bezala, Espainian legezko edo erregelamenduzko araudiak, ebazpen judizialak, erabaki eta jardun administratiboak, baita egoerak ere izatez hark aztertzen dituenaz oso bestelakoak baitira. Horren ondorioz, Espainian ez da Giza Eskubideen Europako Hitzarmenaren edota Giza Eskubideen Europako Auzitegiaren doktrina judizialaren inolako urratzerik gertatzen".

30. Argi geratzen da, beraz, Giza Eskubideen Europako Auzitegiak beren kondena ohiko bizilekutik hurbil betetzeko eskubide subjektiboa aitortzen diela presoei. Epai horiek Espainiako auzitegiak lotesten dituzte Espainiako Konstituzioan aitortutako eskubideen norainokoari buruzko adierazpena egiten dutenean, kasu honetan Espainiako Konstituzioaren 18. artikuluan bildutako eskubideen interpretazioari lotuta, artikulu horretan intimitaterako eta familia-bizitzarako eskubidea aitortzen baita. Intimitaterako eta familia-bizitzarako eskubide horrek kondena ohiko bizilekutik hurbil dagoen leku batean betetzeko eskubidea dakar, modu horretan intimitaterako eta familia-bizitzarako eskubide hori bermatzea ahalbidetuz.

31. Auzitegi Nazionalaren Autoak, lehenago aipatu den bezala, ez du ezer aipatzen Konstituzioaren 18. artikuluari, Giza Eskubideen Europako Hitzarmenaren 8. artikuluari edota Giza Eskubideen Europako Auzitegiak gai horri lotuta eman dituen epaiei buruz. Gobernuak, bestalde, euskal presoekin espetxe-politika berbera egiten jarraitzen du, GEEAren epaiei inolako jaramonik egin gabe. Espainiako zuzenbidean ez dago arau bakar bat ere Espainiako espetxe-administrazioari euskal presoen sakabanaketa-politikari eustea ahalbidetzen dionik.

## AZKEN KONTSIDERAZIOA

32. Espainiako gobernuaren espetxe-politika euskal presoen funtsezko eskubideak urratzen ari da, bereziki bizitza pribaturako eta familia-bizitzarako duten eskubidea (GEEHren 8. art., EKren 18. art.), GEEAren jurisprudentziaren aurka jardunez. Gertakari horiek bereziki larriak dira GEEAren jurisprudentziarekiko haustura bat dakartelako, giza eskubideen estandar baten existentzia ukatuz eta estandar hori itxuratzeko prozesuari kalte eginez. Kasu honetan, jarraitu beharreko estandarra presoen bizitza duin bihurtzean datza, haien egoera okerragotu gabe, eta horretarako funtsezkoa da beren senitartekoekin harremanetan jarraitzea, modu horretan presoen gizarteratzea erraztuz. Gizarteratzearen bilaketa hori Europako espetxe-sistema guztien printzipio bereizgarri bat da.

33. Espetxe-politikak era berean ez du inolako justifikazio politikorik aurkitzen, hori posible izango balitz behintzat. ETAk su-etenaren aldebakarreko deklarazioa egin zuenetik lau urte beteko dira laster. Espainiako gobernuak ez du gertakari hori aintzat hartzen, harentzat gertatu izan ez balitz bezala baita.

Beharbada esan daiteke alderantzizkoa gertatu dela. Su-etena gertatu ondoren, espetxe-politikak aurrekoaren antzekoa izaten jarraitzen du, beharbada alderdi jakin batzuetan are gogorragoa izanik. Salbuespen batzuekin, botere judizialak gobernuarekin bat egiten du euskal presoen kolektiboaren aurreko salbuespen-praktika horri eusteko (Apostolakis Greziaren aurka, Giza Eskubideen Europako Batzordearen 2009ko urriaren 22ko Epaia, 42. idatz-zatia).

34. Euskal presoen egoera zigorren eta zigorrak betearazteko moduaren larriagotze bidegabea eta legez kanpokoa ekartzen ari da, presoak nahiz haien senitartekoak eraginpean hartuz. Euskal presoak bortxatuta dagoen eta nahita haien eskubideen aurkakoa den legezkotasunaren aplikazioarekin salbuespen gisa gehiago ez tratatzeko erreklamatzea, uko egin ezinezko aldarrikapen humanitario bat da. GEEAk berak adierazi duen bezala, ezinezkoa da presoen eta haien senitartekoen artean jarritako distantziak kasu askotan bisitak egitea eragozten jarraitzea, batez ere zaharrak edota haur gazteak direnean. Kondena-metaketa saihestea oso krudela da, batez ere euskal preso gehienek berrogei eta hirurogei urte bitartean dituztelako eta oso espetxe-zigor luzeak bete dituztelako, kasu askotan hogei urtetik gorakoak.

35. Euskal presoekiko gobernu-politikaren eta politika judizialaren helburua ez da bakea lortzea, eta legezkotasun-printzipioa ere ez du errespetatzen. Euskal herritar gehienen borondatearen aurkako politika da. Espetxe-politika hori mendekuzko desirak elikatzen du, giza eskubideak bake-prozesu bat oztopatzeko tresna gisa erabiliz, ez direlako errespetatzen, izan ere, bake-prozesuak aurrerantz egin ahala Espainiako gobernuak atsegin ez dituen planteamendu politikoetara bideratu baitezake. Euskal Herrian normaltasun politiko handiagoa dagoen heinean, subiranotasunaren aldeko planteamenduek era berean garapen handiagoa izateko aukera are handiagoa izango da. Idatzi honekin salatu nahi den espetxe-politika horri eusteko arrazoia horixe dela dirudi.